# Bertso Zarrak



## AZKEN JUIZIYOKO EGUNA.—Xenpelar'ek jarriyak

1
Komeni diran bertso berriak
esplikatu albanitza,
aditutzia desio duen
ati eman diot itza.
Bailak eta soñu ederrak
engañaturi gabiltza,
animarentzat kaltean dator
gure munduko bizitza.

2
Abenduaren lendabiziko
goizeko zazpiyetan zen,
tenplo santuban egonduba naiz
sermoi eder bat aditzen
Jesusen llagak preziosoak
astera nua berritzen
Zeruko Aita lagun zaidazu
entendimentua argitzen.

3
Pekatariyak artu dezagun
dolorea biotzian,
Jesusen zenbat sufritu zuan
gugatik eriotzian,
firme gabiltzan faltatu gabe
Fede Santuko itzian,
gero anima izan ez dediñ
infernurako iltzian.

4
Nere kristaubak birian dator
azken juiziyoko eguna,
jakiña dago begien bistan
ikusi bear deguna,
Josafat'eko zelaya santuan
tronpeta soñu illuna
galduak pena eramingo du
justuarentzat fortuna.

5
Munduko gauzen errematia
dakar azken juiziyoak,
autz biurtu ta utziko ditu
erri ta palaziyoak,
mendiak lertu alkarren kontra
erreinu eta nazioak,
sentenzi ori botako digu
Jesusen bendizioak.

6
Itxasoa, su, eguzki, illun.
illargia odolak artu
lurrak ikara eta gañera
errio danak agortu,
munduko gauzak baliosoak
erre ta ikatz biurtu,
pekatariak umil gaitezen
bada zerekin bildurtu.

7
Eriotzaren larritasuna
suspirioa barrendik
nai sztegula bertan ill bear
anparo gabe iñondik;
Josafateko zelai santura
juango gera emendik,
ez da zeruan sartuko Jesus
desanparatzen duanik.

8
Jesus Zerutik Josafatera
aingeruakin batean,
pekatarien artzai umilla
badator oyen tartean,
zalei santura juango gera
bire guztiak batean,
gure orduko larritasuna
sentenziya eman artean,

9
Alkarren bistan emango digu
sentenziya bat zorrotza,
gure obrak an azaldu bear
gaistoarentzat zer lotza,
pekatariak altza dezagun
Jesusengana biotza,
konsideratu gu gaitik nola
pasa zuan eriotza.

10
Josafateko zelai santuan
asko degu ikusiko,
Jesus nola dan sentenzia bat
guri ematen asiko,
gaixtuak danak infernurako
onak ez du mereziko,
fustuarentzat Zeruan silla
eternidade guztiko,

11
Aita Santu ta errege oyek
obispo ta apaiz guztiak,
pobre ta aberatz dianak berdiñ
maisu orren justiziak;
diruak ez du an balioko
ori gaude ikasiak,
zeñi berea emango dio
Jaungoikoaren graziak.

12
Anima galdu batan tormentu
eta nai gabe aundia,
zer diran eziñ konsideratu
gizonaren memoriak;
eternidade guztiko penak
ez ayen mende jarriak,
orra munduko gustoak eta
egun engañagarriak.

13
Guziok gera pekatariak
deseos edo obretan,
tentazioak guretzat dira
ezta dudarik orretan;
gorputz argala erorten bada
bere guziyo txarretan,
gero anima entregatzendu
etzayen atzaparre an.

14
Bi bire daude ezker ta eskubi
komeni da ikastia,
aukera daude bata Zerura
infernurako bestia;
gure anima Jaungoikuari
ainbesteraño kostia,
ta ¡zer pena artuko duen
Luziferrentzat ustia!

15
Infernuan da kalabozo bat
mortal ikaragarria,
an sartzen danak ikasiko du
tormentu oyen berriya;
Luzifer dago ango errege
ezpatarekin jarriya,
arren mendean egon bearra
animak dauka larriya.

16
Zeruak ditu amabi ate
aingeru bana guardian,
urrez murallak egiñak eta
alaja fiñak erdian;
gloriak daukan edertasuna
musikaren alegrian,
premiyorik alkantzatzera
gabiltzan fede garbian.

17
Aita Santua Erroman dago
izena Pio deritza,
aren kontrako enemiguak
insuraturik gabiltza,
Jaungoikuaren birtutea da
beti errenditzen gaitza,
kristau fielak kunpli dezagun
Ebanjeliyoko itza.

18
Bertso berrien errematia
zer datorkigun jakiña,
orra nik esan nola beardan
egin justu esamiña;
premio ori alkantzatzera
enpeñatu alegiña,
Zu bitarteko eskatzen zaitut
Aingeruen Erregiña.

Imp. Macazaga.—Rentería